# Bertzo Berriyak

— 1 —

Milla ta bederatzireunda
ogei ta amaika urtian
Jesus maitia jayo zanetik
onerano bitartean
bertzo berriyak jarri naiditut
ez iñorentzat kaltian
nekazariyen bizitza zerdan
ezaten azi gaitian
pazadiso au zabaldu naidet
nere lagunen artian.

— 2 —

Ura lurra sostentzalliak
jendiak ortik jatendu
munduan diran naziyo danak
oyekin dira mantendu
ta langilliak bere izerdiya
ortarako ematen du
bere garayan ipiñi eta
aldana lurrari kendu
obe genduke nekazariya
ondo jarriko bagendu.

— 3 —

Pentza dezagun lendabiziko
nundik daguen aziya
gure Jainkuak eman ziyona
ugaritzeko graziya
egonagatik baserritarra
ontzat ezin ikuziya
orrek egiten ezbadu lanik
galduba degu guziya
nekazariyen ezkuan dago
beste guziyen biziya.

— 4 —

Nekazariya sortuba bazan
mundu onetan lenena
gerostikako azierada
beste lanteri danena
irabasteko ez izan arren
ofiziyorik onena
dalako azi klase azkota
ugaritasun duena
beztiak onen erruak dira
au degu prinzipalena.

— 5 —

Alde danetik tiraka daude
badago nundik emanik
ez det nik uzte modu onetan
aguantatuko degunik
nezka ta mutill kalera datoz
ez mendirako afanik
lurrian jartzen ez baldin bada
ezdu emango zer janik
lengo apurrak aitzen berriz
ezda tuzaroko lanik.

— 6 —

Familiya zazoiratzian
kintuaren aztia
aren ordez soldata aundiyan
morroya dator beztia
alde danetik nola daguen
kabugabeko ezkia
geyenaz ere egingo degu
lengo oñian euztia
bazerriyak modu onetan
azko onduko estia.

— 7 —

Jende guziya mantendutzendu
nekazariyaren lanak
gu gera ordu azkuan geren
lanian ari geranak
guretzat gauza gutxi gordiak
besteri asko emanak
nekazariyak galanki badu
ondo dira beste danak
premiyo aundiyak merezi ditu
lurra ondutzen duanak.

— 8 —

Lendabiziko simendukuak
gera lurraren jabiak
zintzo ta zorrotz gorde ditzagun
komeni diran legiak
projimuen da Jesusenakin
erramenikan gabiak
leku askotan orain zabaltzen
diranak baño obiak
urte askuan lagundudeigula
Jesusen amá Mariak.

— 9 —

Nekazariya bera guztiyen
fondo edo simenduba
besterik azko aberastuba
bera pobre egonduba
akordatutzen ekindiyona
dalarikan beranduba
partidurikan indartzuena
balitz alkar lagunduba
au gaizki jartzen baldin bazaigu
galduba dago munduba.

# MUTIL KOXKOR BAT

Mutil koxkor bat itxu aurreko
zuela aldamenian
gizon buru soil bizar zuri bat
bi makuluren gañean
kale ertzian ikusi nuen
iñora ezin joanian
ta bera nor zan jakin naian
inguratu nitzanian
limosnatxo bat eskatu zidan
Jainkuaren izenian.

—

Zerbait emanaz galdetu niyon
al zan modu onenian
jayotzetikan al zeukan ala
gaitzak artua mendian
erantzun zidan ez semia ez
nik indarra nuenian
ez nuen uste iritxitzerik
onetara azkenian
gaur limosna bat eskatutzen det
Jainkuaren izenian.

Eta jarraitu zuen ezanaz
lengo gerrate denian
ni aurre zamar ibiltzen nintzan
beti edo geienian
nekatu gabe aixa igoaz
aldapik luzienian
etzan burura asko etortzen
gu ala gebiltzanian
gero limosna eskatutzerik
Jainkuaren izenian.

—

Odola bero eta burua
arrua dagoenian
edozein eran zartutzen da bat
alako itxumenian
atzekabe ta negar samiñak
badatoz ondorenian
nola ere bait batek biziya
utzitzen ez duenian
limosnatxo bat eskatu biar
Jainkuaren izenian.

Iñoiz pentzatzen nere artian
ni jarritzen naizenian
gaur ere azko dirala joango
lirakenak zuzenian
ez luke iñork siñistatuko
zer pena ematen didan
ai orla nintzan ni ere sendo
ta gaste nenguenian
gaur limosna bat eskatutzen det
Jainkuaren izenian.

—

Ai txorakeri asko egiten
da zentzurik ez danian
sinistu zazu ur au pasia
daukanaren esanian
obiago da gazte dan arte
zayatutzia lanian
negar egiñaz ibilli gabe
gero garaya joanian
limosnatxo bat bildu eziñik
Jainkuaren izenian.

ELUSTONDO-ZARAUZ